# AZERIAK ZIEGA UTZI DU

'Eskularruak erostera' umeentzako ipuina japonieratik euskarara itzuli du Labeaga euskal presoak. Espetxeetatik irtendako idazlanak ugaritu diren arren, oztopo asko dituzte.

Gotzon Hermosilla

Negua heldu da Kitzune azerikumea bizi deneko basora. Estreinako aldiz ikusi du elurra Kitzunek. Ikusi ez ezik, horren hoztasun mingarria ere sentitu du. Horregatik, Kitzune eta ama herrira abiatu dira, azerikumearentzat eskularruak erostera. Hori da, hain zuzen, Kitzuneren ibilerak kontatzen dituen ipuinaren izenburua.

Oso liburu berezia da *Eskularruak erostera*. Berezia, japonieratik euskarara itzuli dutelako, eta ez dira asko ekialde urruneko hizkuntza horretatik euskarara isuritako lanak. Baina beste kontu batek egiten du berezi umeentzako liburuxka hori. Itzultzailea euskal preso politikoa da, Urko Labeaga Garcia. Ziegako lau hormen artean ekin zion jatorrizko liburua itzultzeari. Are gehiago: espetxean zegoela hasi zen japoniera ikasten. Esfortzu horren emaitza kalean da dagoeneko.

1971n jaio zen Labeaga, Getxoko Algorta auzoan, baina denbora luzean Sopelan eta Hondarribian bizi izan zen. Gorputz Hezkuntza ikasi zuen Gasteizen, eta Ertzaintzak atxilotu zuenean irakasle aritzen zen Bilbon, San Inazioko institutuan. 1998an atxilotu zuten, eta geroztik, hainbat espetxetan izan da. Une honetan Topasen dago, Salamancan (Espainia).

Espetxeratu zutenean, arkitektura ikasteko asmoa agertu zuen Labeagak, baina kartzelan arazo ugari aurkitu zituen bide horretan, eta, orduan, hizkuntzak ikasteari ekin zion. Urkoren aita Santi Labeagak dioenez, lehenagotik euskaraz eta gaztelaniaz bazekien, eta ingelesez eta alemanez apur bat ere bai. Azken bi horietan sakondu eta frantsesa, italiera eta japoniera ikasten hasi zen, bere kasa.

Duela lau urte edo hasi zen japoniera ikasten. «Zoratu egin gara japonierazko liburu bila», azaldu du Santi Labeagak, «baina, apurka-apurka, sarean begiratuz eta liburu dendetan galdetuz, gauza batzuk aurkitu ditugu eta sartu ere egin dizkiogu. Batez ere, idazmena eta irakurmena menperatzen ditu; ahoz komunikatzeko arazo gehiago dauzka, kartzelan japoniera norekin hitz egin ez daukalako».

## *Ipuinak liluratuta*

Hurrengo urratsa izan zen ipuin bat itzultzea. Labeagaren eskura jarri zituzten japonierazko liburuen artean, batek bereziki erakarri zuen presoaren arreta, *Eskularruak erostera* izeneko Japoniako antzinako kondairak. Euskal Herrian bizi diren japoniar batzuek oparitu zieten Labeagaren senitartekoei. Ipuinaren ederrak liluratuta, itzultzeari ekin zion.

Lana ez zen samurra izan, kartzelak ez baitu ematen horrelako behar batek eskatzen duen sosegu eta lasaitasuna. Egunero, hogei ordu ematen ditu Labeagak ziega barruan, haren neska-lagun Ainara Obesok gogoratzen duenez. Diziplina handiz gainditu zituen Labeagak oztopo guztiak: «Horretarako, Urko oso ordenatua da, oso metodikoa», adierazi du Santi Labeagak. «Ondo banatuta dauka denbora: tarte bat eskaintzen dio ingelesari, gero beste bat japonierari, eta abar».

Bi urte inguru eman ditu horretan, baina, dagoeneko, lana amaituta dago. Orain, Labeagaren lagunak bideak aztertzen ari dira ipuina argitaratu ahal izateko. Itxaronaldia gozatzeko, Hondarribiko Amnistiaren Aldeko Mugimenduak ale gutxi batzuk jarri ditu Labeagaren lagunen eskura. Oso edizio zaindua da, eta euskarazko itzulpenarekin batera, japonierazko jatorrizko testuak ere agertzen dira, irudi ugarirekin hornituta.

2007a urte berezia izan da Labeagarentzat. Itzulpena amaitzeaz gain, lehenengo alaba izan du, Xuhar, duela gutxi lau hilabete egin dituena. Orain, hurrengo itzulpenaz pentsatzen hasia da Labeaga, baina oraindik ez daki umeentzako lana ala nagusientzakoa izango ote den. Bitartean, hizkuntzak ikasten segitzen du: «Urkok beti esaten du atzerriko hizkuntzak ikasteak euskara are gehiago maitatzera eraman duela», adierazi du Ainara Obesok. «Horregatik, kanpoko hizkuntzak ikasteaz gain, euskalkiak, tokian tokiko hitanoa eta antzekoak ikasten ere buru-belarri dabil».



**Kitzune azerikumea.** Animalia txikiaren ibilerak kontatzen dituen Urko Labeagaren liburuko irudi bat. IBERRIA

> «Zoratu gara japonierazko liburu bila, baina topatu dugu zerbait eta kartzelara bidali diogu»
>
> SANTI LABEAGA
> URKO LABEAGA EUSKAL PRESOAREN AITA

> «Barruko esperientziak gogorrak dira, eta presoak barrenak askatzeko beharra izaten du»
>
> OLATZ CAMINOS
> ATARAMIÑE

## *Kartzelako literatura*

Euskal Herrian, kartzela eta erbestea literatura eskola paregabeak izan dira historikoki, eta eleberri, olerki eta itzulpen ugari ailegatu dira handik. Euskal preso eta iheslarien sorkuntza lanei bide emateko ekimen ugari egon dira, eta horietan nabarmenenetako bat Ataramiñe taldea da.

«Barruan edo erbestean daudenek arazo handiak dituzte euren lanak argitaratzeko», adierazi du Olatz Caminos Ataramiñe taldekoak, «eta beharrezkoa zen haien esperientzia, asmo eta ametsak plazaratzeko bide bat topatzea. Horregatik sortu zen Ataramiñe taldea 2002 urtean, eta lanean jarraitu du gaur arte». Denbora tarte horretan hainbat liburu eta aldizkari eta disko bat argitaratu dituzte, den-denak preso eta iheslarien lanekin atonduak.

Topikoak dio kartzelan denbora sobera dagoela horrelako lanak egin ahal izateko. Caminosek gezurtatu egiten du uste hori: «Barruan, desabantailak handiagoak dira abantailak baino. Sorkuntzarako beharrezkoak diren baliabideak ez daude kartzelan: ez dago ordenagailurik, ez dago leku fisikorik, zarata eta tentsio handia egoten da eta abar. Beste aldetik, preso eta iheslariak idazleen ohiko girotik at egoten dira. Ez daukate aukerarik beste idazleekin harreman normalak izateko, ezin dute jardunaldietan, hitzaldietan eta horrelakoetan parte hartu, eta abar. Sekulako amildegia dago».

Eta orduan, zailtasunak hain handiak badira, zergatik dira horren ugariak espetxeetatik iristen diren sorkuntza lanak? «Beharra dagoelako. Barruko esperientziak ezohikoak izaten dira, gogorrak, eta horiek adierazteko beharra egoten da. Gizakia zarela eta bizirik zaudela esateko beharra, bakartzea apurtu eta barrenak askatzeko beharra».

Badago beste topiko bat, kartzelatik sortutako lanak kalitate eskasekoak direla dioena. Topiko hori ere bertan behera utzi nahi du Caminosek. «Aurreiritziak dira horiek. Kanpoan bezala, barruan egiten diren lanak oso desberdinak dira. Batzuk oso onak dira, eta beste batzuk ez hain onak, kalean gertatzen den bezalaxe».

Kalitatearen inguruko eztabaidak antzuak gorabehera, Ataramiñekoek askoz garrantzi handiagoa ematen diete preso eta iheslarien lana ezagutarazteari, Caminosek dioenez: «Gure asmoa ez da errepresaliatu politikoen sorkuntza lanak kapitalizatzea. Aitzitik, ahalik eta leku gehienetara eraman nahi dugu, haien ahotsa leku guztietara irits dadin, oztopo guztiak gaindituz».